# «FRAISKU» SANTUAREN EGUNEKO EUKARISTIA



**Hasiera oharra**

Nor zan, zer zan gaur eta hemen omentzen dogun santua: Asisko Frantzisko (Fraisku)?

Itxura oneko gaztea zan, familia onekoa, orraztea eta ondo jantzita ibiltea ebana gogoko, eta lagunekaz jai bat hemen eta beste bat han egiten ebana, eta handiguraz bizi zana.

Baina bila ebilan, eta Nazareteko Jesusek ikutu eutson bihotza. Harrezkero ez egoan beretzat pobrezia eta umiltasuna langorik. Hori besarkatzeak, ingurukoen irri eta barreak ekarri eutsozan, baina baita bere barruko bakea eta benetako askatasuna ere aurkitu ebazan. Eta laster baten inguratu jakozan era askotako bilatzaileak, euren fedea erradikaltasunean bizi izan gura ebenak. Eta bizigarri suertatu zan orduko Eleizearen ustel giroan.

Gaur behar doguz holango santuak! Bide horretan zehar abiatu da aitasantu Frantzisko. Baina… aurkituko ete dau gure artean lagunik? Ez ete gara konformatuko *osasuna eskatzeaz?* Hori baino gehiago emon leigu Fraiskuk: adorea eta ausardia, pobretasunean libre izateko, eta Izadi osoagaz bakean bizi izateko.

**Sarrerako abestia**

**LURREKO POBREENAK**, LARRI TA OIHUKA:
HAIEN NEGAR-SAMINA JAUNAREN AHOTSA.

Jaunak sortu baditu ura eta pertsonak
berarentzat guztiok bagara bardinak:
zelan anaiak deitu pobreei lotsa gabe
geure erruz gosez ta egarriz badaude?

**Abadearen agurra**
† Aitaren eta Semearen...
—Amen.
† Jauna zuekin.
—Eta zure espirituarekin.

**Damu-otoitza**

Damua eta pekatua alkartzetik urten eta Jainkoaren errukia dastatzera heldu geintekez, harengana konfiantzaz joten badogu. Horrek bizikeraz aldatzera eroango gaitu:

—Jesus Jauna, handi izatea laga eta txikiokaz bat egin zinana, *erruki, Jauna*.

—Jesus Jauna, pobreekana eta baztertuekana hurreratu zinana, *Kristo, erruki*.

—Jesus Jauna, Jainkoaren errukia eta pobrenganako bihozberatasuna iragarri zenduzana, *erruki, Jauna*.

**Bertsotan**

"Fraisku" Asisko santu pobrea, aldietan maitatua,
egizu, arren, gu danon alde zeruetan erregua.
Gure artean urte luzeetan nagusi da-ta dirua;
*eskatu eizu gu guztiontzat neurrizko bizimodua*…

**Otoitza**

Oi Jainko,
Kristoren antz-antzeko egin zenduan
Asisko Frantzisko santua,
bizitza umilaren eta behartsuaren bidez;
egizu, ibili gaitezala haren bide beretik,
zure Semeari jarraitzeko
eta maitasun pozgarriz Zeugaz bat egiteko.
Zure Seme Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez,
Zurekin eta Espiritu Santuarekin batean
Jainko eta errege bizi da-eta gizaldi eta gizaldietan.

**Irakurgaiari sarrerea**

Zer da guretzat inportantea: bateatua izatea, mezatara etortea, errezatzear…, ala gizaki barri izatea? Hori zer dan esango deusku Paulo apostoluak.

*Kristo kurutzean hil zan ezkero,*
*mundua hilik dago niretzat eta ni munduarentzat.*

**San Paulo Apostoluak Galaziarrei egindako gutunetik**

(Ga 6, 14-18)

Senideok: Jesu Kristo gure Jaunaren kurutzean izan ezik; Kristo kurutzean hil Niri dagokidanez, Jainkoak libratu nagiala harrotzetik, zan ezkero, mundua hilda dago niretzat eta ni munduarentzat. Izan be, erdaindua izateak nahiz erdainbakoa izateak ez deutso ardura; balio dauana sorkari barri izatea da. Bakea eta errukia arau honi lotuak bizi diranei, baita Jainkoaren Israeli be! Hemendik aurrera ez deidala inork nekerik emon: Jesusen zauri-markak neure gorputzean daroadaz-eta nik. Senideok, Jesu Kristo gure Jaunaren grazia zuen espirituarekin. Amen.

*Jaunak esana*

**Erantzun Salmoa (Sal 15, 1-2ª eta 5. 7-8. 11)**

**R/. Zeu zaitut, Jauna, ondasuna.**

Gorde nagizu, Jainko, Zugan naz-eta babesten.
Hau dinotsot Jaunari: «Zu zaitut neure Jauna».
Jauna, Zeu zaitut neure ondarea, neure edontzia,
zure esku dago nire zoria. R/.

Bedeinkatzen dot Jauna, aholku deust-eta emoten,
gauez be berak dau nire barrua hezten.
Begi aurrean dot Jauna eten barik;
ha eskuman dodala, ez naiteke dardaratu. R/.

Bizirako bidea erakutsiko deustazu;
alaitasunez beteko nozu zeure aurrean,
zorionez betiko zeure ondoan. R/.

**Ebanjelioari sarrerea**
Gure amesa asko jakitea, asko eukitea, izen handiko izatea… izaten da, zoriontsu holantxe baino ez garalata izango. Baina holan ete da? Ea zer dinoskun Jesusek. Egin deiogun harrerea Aleluia abestuz, zutunik.

**Aleluia** Si 39, 14
**R/.** Aleluia.
**V/.** Haren jakituriaz hitz egingo dabe herriek,
haren gorespena egingo dau herri-batzarrak. **R/.**

**Ebanjelioa**

*Gozoa eta bihotz-apala naz.*

**† Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik**

Mt 11, 25-30 (384. or.)

Aldi haretan, Jesusek esan eban: «Bedeinkatua Zu, Aita, zeru-lurren Jauna, gauza honeek jakintsuei eta burutsuei gorde eta jente txikiari agertu deutsazuzalako. Bai, Aita, halan izan dozu gogoko. Nire Aitak dana emon deust, eta ez dau inork Semea ezagutzen, Aitak baino; ezta Aita be, Semeak baino, eta Semeak agertu gura deutsonak baino.

Zatoze Neugana nekatu eta lanpetu guztiok, eta Neuk arinduko zaituet. Hartu egizue nire buztarria eta ikasi Neugandik, ze gozoa eta bihotz apala naz, eta aurkituko dozue zeuen arimentzako atsedena. Izan be, Nire buztarria leuna da, eta nire zama arina».

Jaunak esana

## ESKARIAK

† Pobreen ondotik ezelan ere aldentzen ez dan Jainkoari egingo deutsagu otoitz bere aurrean behartsu lez agertuz:

—Gure arteko gaixo, zahar, baztertu eta aurrean erabiliak diranen alde: beste guztion errukia eta laguntza lortu daien, gizarte zuzenagoa eraiki ahal izan daigun, *egin daigun otoitz*.

—Euren etxe edo lurraldetik iheska dihardúen eta beste lurraldeetako ateak itxita aurkitzen dituen gizakien alde: benetako ondasun lez begiratu deiegun, eta gure bihotzeko eta etxeko ateak zabaldu deieguzan, *egin daigun otoitz*.

—Eleiza pobrea gura izateak eleizgintzara mogidu gaizan eta gure eleiztartasuna gaurkotzera, *egin daigun otoitz*.

—Fraisku santua Eukaristian omentzen dogunok sinismenaren erradikaltasunera heldu gaitezan, santuak omentzeko beste era batzuk ere aintzat hartzeraino, *egin daigun otoitz*.

† Jesukristori jarraitzera bultzatzen gaituzun Jainko ona: geuretu daigula pobrezia eta beti pobreen ondoan egotea, Fraisku santua aurrelari dogula. Jesukristo gure Jaunaren bitartez.

—Amen.

### Oparien gainerako

Meza danetan opari bidez aurkezten dogu fedea,
diru-batzean gogotan hartuz hemengo ta_hango pobrea.
Ogia eta ardaua dira guretzako mahaikadea:
*mahai honetara etor daitela edonongo_inmigrantea*...

**Otoitza**

Gure emoitzak ekartzean, Jauna,
Zeuri otoitz egiten deutsugu:
prestatu gaizuz Asisko Frantzisko santuak
hain maite eban kurutzeko misterioa egoki ospatzeko.
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

**Prefazioa**

Jauna zuekin.
Eta zure espirituarekin.

Gora bihotzak.
Jaunagan daukaguz.

Eskerrak Jaungoiko gure Jaunari.
Egoki da eta zuzen.

Egoki da, bai, eta zuzen, bidezko eta sal-ba-ga-rri, no-na-hi eta

beti guk Zuri eskerrak e-mo-te-a, Jauna, Aita guz-tiz san-tu,

Jainko ahalguzti - dun be-ti - ko ho-rri. Egoki da, bai, Zu

go-res-te-a, gu-re - tzat dozun ardura miragarria agertzen do-zu–

la-ko, zeruetako erreinuagaitik euren burua Kristori es-kei-ni-ta

bizi i-zan di-ran san-tu-en-gan. Ho-lan, hasiera haretako santuta-

su-ne-ra erakartzen dozu barriro gi-za-di-a eta aurretik goza-

tuazoten deutsazuz he-men geroko bizi barrian izango di-tu-an on-

da-su-nak. Horregai-tik, santu eta aingeru guz-ti-e-kin goresten

zai-tu-gu beti eta beti kan-ta-tzen do-gu-la:

**Prefazioa**

Egoki da, bai, eta zuzen, bidezko eta salbagarri,
nonahi eta beti guk Zuri eskerrak emotea,
Jauna, Aita guztiz santu, Jainko ahalguztidun betiko horri.

Egoki da, bai, Zu gorestea,
guretzat dozun ardura miragarria agertzen dozulako,
zeruetako erreinuagaitik euren burua Kristori eskeinita
bizi izan diran santuengan.

Holan, hasiera haretako santutasunera
erakartzen dozu barriro gizadia
eta aurretik gozatuazoten deutsazuz hemen
geroko bizi barrian izango dituan ondasunak.

Horregaitik, santu eta aingeru guztiekin goresten zaitugu
beti eta beti [esaten] kantatzen dogula:

**Jaunartzerako abestia**

**Zabal bihotzok errukirako,**
**sendo bihotzok borrokarako.**

—Gizon-emakume barri, kondairaren eragile
gizatasun barriaren oinarri eta egile.
Gizon-emakume barri arriskuen onartzaile,
fede-bizitzan ausarta, zailtasunetan garaile.

—Gizon-emakume barri, esperantzaren gudari,
zuzenaren gose-egarri, egi bidean bidari.
Gizon-emakume barri, ez kate ta ez lokarri,
askatasunaren jabe eta askatasun-azkarri.

—Gizon-emakume barri, mugaz-gaindiko maitale,
alkar artean oretuz arraza eta lurralde.

Gizon-emakume barri, pobreen artean pobre,
hauekin alkarbanatuz etxeko ogi ta aterpe.

**Jaunartze ondorenerako**

Pobre zalako "Fraisku" santua izan zan guztiz librea,
beretzat hartuz ipar bakar hau: Barri Ona jarraitzea.
Eukaristia ospatu dogu, sartu jaku zirrarea:
*bateratuta bizi daiguzan pobrezia ta fedea*...

**Jaunartze ondorengoa otoitza**

Hartu dogun sakramentuaren bidez, Jauna,
emoiguzu Asisko Frantzisko santuaren maitasuna
eta apostolu-garra imitatzeko grazia;
sentidu daiguzala zure maitasunaren ondorioak
eta balia dakiguzala gizon-emakume guztien salbazinorako.
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

**Azken agurrerako oharra**

Frantzisko aitasantuak *pobreak gogoan eukiteko* mundu mailako eguna ezarri dau, aurreko urtean *errukiaren urtea* izendatu ondoren: zemendiaren 18-19an izango da aurten.
Hori dala-ta, geuk ere bat egin gura dogu Frantziskoren asmoekaz eta zeinuren bat egin gura izango geuke, bai bakotxak bere aldetik, baina baita eliz alkarte lez ere. Ea zer bururatzen jakun... Badaukaguz Caritasegaz kolaboratzeko txartelak.

**Azken abestia**

**Jende asko negarrez,**
**horrek nauka minez** (bir)

—Etxe gabe, goseak hilten,





pozik gabe bizia galtzen.
—Bizia maite baina ezin,
jakitea baina norekin.
—Jainko seme-alabak dira
ta gu anaiak ote gara?